# URTEAN ZEHARREKO XIV. DOMEKA

## A urtean

### I. IRAKURGAIA

*Hara, badatorkizu zeure erregea apal.*

Zakariasen Profezia liburutik

*Za* 9, 9-10

Honan berba egin dau Jaunak:
«Poztu biziro, Sion uri eder!
Egin irrintzi, Jerusalem uriburu!
Hara, badatorkizu zeure erregea: zuzen eta garaile dator,
apal eta asto baten gainean, astakume baten gainean.
Berak hondatuko ditu Efraimgo guda-gurdiak
eta Jerusalemgo zaldiak;
hausiko ditu guda-uztaiak, eta bakea iragarriko deutse nazinoei.
Itsasotik itsasora aginduko dau,
Eufrates ibaitik lurraren azken mugetaraino».

Jaunak esana.

Erantzun salmoa

*Sal* 145 [144], 1-2. 8-9. 10-11. 13c-14 (R/. 1)

R/. **Ene Jainko, ene errege,**
**bedeinkatuko dot zure izena**

**betiere.**

Edo: **Aleluia.**

V/. Goratuko zaitut, ene Jainko, ene errege,
bedeinkatuko dot zure izena betiere.
Egunero zaitut bedeinkatuko,
beti dot zure izena goratuko. R/.

V/. Errukiorra eta bihozbera da Jauna,
hasarregatxa eta onginahiz betea.
Ona da Jauna guztientzat,
errukiz betea bere sorkari guztientzat. R/.

V/. Goratu zagiezala, Jauna, zeure sorkari guztiek,
bedeinkatu zeure fededunek;
aitatu begie zure erregetza ospetsua,
berba egin begie zure ahalmenaz. R/.

V/. Fidagarria da Jauna bere hitz guztietan,
leiala bere egintza guztietan.
Jaunak eusten deutse jausteko zorian dagozanei,
eta jasotzen ditu lur joak. R/.

## II. IRAKURGAIA

*Espirituaren bidez gorputzaren egiteak hilarazoten badozuez,*
*biziko zarie.*

San Paulo Apostoluak Erromatarrei egindako epistolatik

*Erm* 8, 9. 11-13

Senideok: Zuek ez zarie grina txarren menpean bizi, Espirituaren menpean baino, Jainkoaren Espiritua zuengan bizi da-eta.

Norbaitek Kristoren Espiritua ez badau, hori ez da Kristorena. Jesus hilen artetik biztu eban Jainkoaren Espiritua zuengan bizi bada, Kristo hilen artetik biztu ebanak berak biziarazoko ditu zuen gorputz hilkorrak be, zuengan bizi dan Espirituaren bitartez.

Zorretan gagoz, beraz, senideok, baina ez grina txarrekin, horreen arabera bizitzeko. Holan bizi bazarie, hil egingo zarie; baina Espirituaren bidez giza egintza gaiztoei uko egiten badeutsezue, biziko zarie.

Jaunak esana.

## Aleluia

Ik. *Mt* 11, 25

R/. **Aleluia.**

V/. Bedeinkatua Zu, Aita, zeru-lurren Jauna,
erreinuari buruzko Barri Ona
jente apalari agertu deutsazulako. R/.

## EBANJELIOA

*Gozoa eta bihotz-apala naz.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Mateoren liburutik

*Mt* 11, 25-30

Aldi haretan, Jesusek esan eban: «Bedeinkatua Zu, Aita, zeru-lurren Jauna, gauza honeek jakintsuei eta burutsuei gorde eta jente txikiari agertu deutsazuzalako. Bai, Aita, halan izan dozu gogoko.

Nire Aitak dana emon deust, eta ez dau inork Semea ezagutzen, Aitak baino; ezta Aita be, Semeak baino, eta Semeak agertu gura deutsanak baino.

Zatoze Neugana nekatu eta lanpetu guztiok, eta Neuk arinduko zaituet. Hartu egizue nire buztarria eta ikasi Neugandik, ze gozoa eta bihotz-apala naz, eta aurkituko dozue zeuen arimentzako atsedena. Izan be, Nire buztarria leuna da, eta nire zama arina».

Jaunak esana.

# URTEAN ZEHARREKO XIV.

# DOMEKA
## B urtean

## I. IRAKURGAIA

*Jakingo dau herri bihurri horrek badauala profeta bat bere artean.*

Ezekielen Profezia liburutik

*Ez* 2, 2-5

Egun hareetan, Jaunaren espiritua sartu zan nigan eta zutunik jarri ninduan, eta berba egiten eustanari entzun neutsan esaten: «Gizaseme, israeldarrengana bialtzen zaitut, jente bihurri horrengana; horreek eta horreen asabak nire aurka jagi dira gaur arte. Seme-alaba burugogor eta setatsu horreengana bialtzen zaitut nire mezua adierazotera. Holan, entzun ala ez, jakingo dau herri bihurri horrek badauala profeta bat bere artean».

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 123 [122], 1. 2. 3-4 (R/. ik. 2ce)

R/. **Gure begiak Jaunagana dagoz, gutaz erruki dadin arte.**

V/. Zugana jasotzen ditut begiak,
zeruan errege zaran horrengana. R/.

V/. Zelan morroien begiak nagusien eskuetara

eta neskamearen begiak etxekoandrearen eskuetara,
halan dagoz gure begiak Jaunagana,
gure Jainkoagana,
gutaz errukitu dadin arte. R/.

V/. Erruki gutaz, Jauna, erruki!
Buruz gain gagoz mespretxuz,
buruz gain ustetsuen burlaz,
harroen irainez. R/.

## II. IRAKURGAIA

*Pozik harrotuko naz neure makaltasunez,*
*Kristoren indarra bizi dadin nigan.*

San Paulo Apostoluak Korintoarrei egindako bigarren epistolatik

*2 Ko* 12, 7-10

Senideok: Neure burua dan baino handiagotzat jo ez dagidan, haragian sartuta daukadan eztena emon jat, jo eta jo narabilan Satanasen ordezkaria, harrotu ez nadin. Hiru aldiz eskatu deutsat Jaunari, kendu deidala, baina harek esan deust: «Nahikoa dozu nire laguntza, nire indarra makaltasunean gauzatzen da-eta bete-betean».

Pozik harrotuko naz, beraz, neure makaltasunaz, Kristoren indarra bizi dadin nigan. Pozik nabil, beraz, Kristogaitik jasaten ditudan

makaltasuna, irain, beharrizan, erasoaldi eta estualdietan. Makal nazanean, orduan naz-eta indartsu.

Jaunak esana.

## Aleluia

Ik. *Lk* 4, 18

R/. **Aleluia.**

V/. Behartsuei Barri Ona emotera bialdu nau Jaunak,
katiguei askatasuna iragartzera. R/.

## EBANJELIOA

*Profetari edonon emoten deutsoe ohore,*
*bere herrian izan ezik.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Markosen liburutik

*Mk* 6, 1-6

Aldi haretan, Jesus bere herrira joan zan, ikasleak ondoren ebazala. Hurrengo zapatuan, sinagogan irakasten hasi zan. Entzule askok, harriturik, hauxe inoen: «Nondik dau honek hori guztia? Zer da emon jakon jakituria hori? Eta honen eskuz gertatzen diran mirari horreek? Hau ez ete da, ba, arotza, Mariaren semea eta Santiago, Jose, Judas eta Simonen anaia? Eta honen arrebak be ez ete dira

hemen gure artean bizi?» Eta ezin eben sinistu harengan.

Jesusek esan eutsen: «Ez dago profetarik ohoratua ez danik, bere herrian, senitartean eta etxean izan ezik».

Eta ezin izan eban han mirariri egin; halan be, gaixo bakar batzuk osatu zituan, eskuak gainean ezarriz. Eta harrituta egoan hareen sinisgogorkeriaz. Gero, inguruko auzoetan ibili zan, irakasten.

Jaunak esana.

# URTEAN ZEHARREKO XIV. DOMEKA
## C urtean

### I. IRAKURGAIA

*Ibaika ekarriko deutsat Jerusalemi zoriona.*

Isaias Profetaren liburutik

*Is* 66, 10-14c

Poztu zaiteze Jerusalemegaz,
alaitu haregaz, maite dozuen guztiok!
Izan orain haregaz zoriontsu,
harengaitik dolu egin zenduenok!
Asetzeraino edango dozue haren bular

gozotik,
atseginez xurgatuko haren ugatz oparotik.

Esan be hau dino-eta Jaunak:

«Ibaika ekarriko deutsat Jerusalemi zoriona,
erreka betean nazinoen ondasuna.
Bularra emongo deutsuet,
altzoan eroango eta magalean gozatuko.
Amak umea kontsolatzen dauan lez,
halantxe kontsolatuko zaituet Nik;
bai, Jerusalemen kontsolatuko zaituet.
Hau ikustean, poztuko jatzue bihotza,
bedar barria lez loratuko dira zuen hazurrak,
eta Jaunak bere ahalmena agertuko deutse bere zerbitzariei».

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 66 [65], 1-3a. 4-5. 6-7a. 16 eta 20 (R/. 1)

R/. **Lur osoa, egiozu irrintzi Jainkoari.**

V/. Lur osoa, egiozu irrintzi Jainkoari,
kanta haren izen ospetsuari,
emon aintza eta gorespen hari.

Esan Jainkoari: «Zein ikaragarriak diran zure egintzak!». R/.

V/. Mundu osoa ahuspezten da zure aurrean,
Kantatu deioela, kantatu zure izenari.
Zatoze eta ikusi Jainkoak eginak,
izugarriak dira gizakien aldeko haren egintzak. R/.

V/. Lehor bihurtu eban itsasoa,
oinez igaro eben ibaia;
poztu gaitezan, beraz, haregaz.
Nagusi da betidanik bere ahalmenaz. R/.

V/. Zatoze eta entzun, Jainkoari begirune deutsazuenok,
kontatuko deutsuedaz harek nire alde eginak.
Bedeinkatua Jainkoa, ez dau-eta baztertu nire otoitza,
ezta aldendu be nigandik bere maitasuna. R/.

## II. IRAKURGAIA

*Jesusen zauri-markak neure gorputzean daroadaz nik.*

San Paulo Apostoluak Galaziarrei egindako epistolatik

*Ga* 6, 14-18

Senideok: Niri dagokidanez, Jainkoak libratu nagiala harrotzetik, Jesu Kristo

gure Jaunaren kurutzean izan ezik; Kristo kurutzean hil zan ezkero, mundua hilik dago niretzat eta ni munduarentzat. Izan be, zirkuntzidatu izateak nahiz zirkuntzidatubakoa izateak ez deutso ardura; balio dauana sorkari barri izatea da.

Bakea eta errukia arau honi lotuta bizi diranei, baita Jainkoaren Israeli be! Hemendik aurrera ez deidala inork nekerik emon: Jesusen zauri-markak neure gorputzean daroadaz-eta nik.

Senideok, Jesu Kristo gure Jaunaren grazia zuen espirituagaz. Amen.

Jaunak esana.

## Aleluia

*Kol* 3, 15a. 16a

R/. **Aleluia.**

V/. Kristoren bakeak agindu begi zuen bihotzean;

bizi bedi oparo zuengan Kristoren hitza.

R/.

## EBANJELIOA

Ebanjelio hau era laburrean ik. honen ondoren.

*Haren gainean kokatuko da zuen bakea.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Lukasen

liburutik

*Lk* 10, 1-12. 17-20

Aldi haretan, Jaunak beste hirurogeta hamabi ikasle izendatu eta bere aurretik bialdu zituan binaka, bera joatekoa zan herri eta leku guztietara.

Eta esan eutsen: «Uzta ugaria da, baina beharginak gitxi. Egin, beraz, otoitz uzta-jaubeari bialdu dagizala langileak bere uztara. Zoaze! Bildotsak otso artera lez bialtzen zaituet. Ez eroan boltsarik, ez zakutorik, ez oinetakorik, eta ez gelditu bidean inori agur egiten.

Edozein etxetan sartzen zariela, esaizue lehenengo: "Bakea etxe honetakoei!" Eta han bakezalerik bada, haren gainean jarriko da zuen bakea; osterantzean, barriz, zuen bakerik barik geldituko dira. Gelditu zaiteze etxe berean; eta jan eta edan daukienetik, ze, beharginari zor jako bere saria.

Ez ibili etxez etxe. Herriren baten sartu eta ondo hartzen bazaituee, jan ipintzen deutsueenetik, osatu bertako gaixoak eta esaiezue: "Hurrean dozue Jainkoaren erreinua".

Baina herriren baten sartu eta

onartzen ez bazaituee, urten plazara eta esan: “Oinetara batu jakun zuen herriko hautsa be berton astintzen deutsuegu. Dana dala, jakizue hurrean dala Jainkoaren erreinua”.

Begira: auzi-egunean Sodomak zigor bigunagoa izango dau, herri harek baino».

Hirurogeta hamabi ikasleak pozez beterik bihurtu ziran, eta esan eutsoen Jesusi: «Jauna, deabruak be menpean jartzen jakuz zure izenean».

Jesusek erantzun eutsen: «Oinaztua lez zerutik jausten ikusi dot Satanas. Begira, sugeak eta eskorpioiak zapaltzeko eta arerioaren indar guztiak azpian hartzeko ahalmena emon deutsuet, eta ezin izango deutsue ezerk be kalterik egin. Halan be, ez poztu espirituak menpean jartzen jatzuezalako; poztu, bai, zeuen izenak zeruan idatzita dagozalako».

Jaunak esana.

---

Ebanjelioa era laburrean.

*Haren gainean kokatuko da zuen bakea.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Lukasen liburutik

*Lk* 10, 1-9

Aldi haretan, Jaunak beste hirurogeta hamabi ikasle izendatu eta bere aurretik bialdu zituan binaka, bera joatekoa zan herri eta leku guztietara. Eta esan eutsen: «Uzta ugaria da, baina beharginak gitxi. Egin, beraz, otoitz uzta-jaubeari bialdu dagizala langileak bere uztara. Zoaze! Bildotsak otso artera lez bialtzen zaituet.

Ez eroan boltsarik, ez zakutorik, ez oinetakorik, eta ez gelditu bidean inori agur egiten. Edozein etxetan sartzen zariela, esaizue lehenengo: “Bakea etxe honetakoei!” Eta han bakezalerik bada, haren gainean jarriko da zuen bakea; osterantzean, barriz, zuen bakerik barik geldituko dira. Gelditu zaiteze etxe berean; eta jan eta edan daukienetik, ze, beharginari zor jako bere saria.

Ez ibili etxez etxe. Herriren baten sartu eta ondo hartzen bazaituee, jan ipintzen deutsueenetik, osatu bertako gaixoak eta esaiezue: “Hurrean dozue Jainkoaren erreinua”.

Jaunak esana.